etxerat

euskal errepresaliatu politikoen senide eta lagunak

familiares y allegados de represaliados políticos vascos

Parents et amis de prisonniers et réfugiés politiques basques





# hilabetekaria

2013 uztaila-iraila

# aurkibidea

# iraila

Uda amaitu da, eta ikasturte berri bat hasi dugu hil honetan. Baina, ezin esan udan euskal preso, iheslari eta deportatuek, eta guk euren senide eta lagunek atseden hartzeko aukerarik izan dugunik. Izan ere, eta urtero bezala, sakabanaketak ez du etenik izan. Eta milaka pertsonek aisiagatik bidaiatzen zuten bitartean, guk obligazioz bidaiatzen jarraitu behar izan dugu. Zenbait kasutan gure oporrak ere bidaia hauetara mugatuz.

**595**

Baina, ohiko eskubide urraketez gain azken hilabeteetan gure eta gure senideen aurkako, eta baita Etxerat elkartearen aurkako kriminalizazio kanpaina geldiezin bat pairatu behar izan dugu. Uda  Angel Yustek, Espainiako Espetxe Erakundeetako idazkari nagusiak, egindako adierazpen larri batzuekin hasi genuen: sakabanaketa senide eta lagunon ardura dela baieztatu zuenean. Eta honen atzetik etorri dira, Urkijo jaunak hartutako hainbat erabaki (horien artean Etxerateko kide den eta konpartsen aukeratu zuten Jone Artola txupineraren aurka abiatutako kanpaina), Pablo Gorostiagaren emazte Judithen heriotzaren aurrean espetxe zuzendaritzak hartutako jarrera ankerra, Etxerateko Hernaniko egoitzan gure senideentzat “hilobi komun” bat eskatuz...

Guzti hau azken hilabeteetan, gure kontra eta espetxean, ihesean eta deportatuta dauden gure senide eta lagunen kontrako jazarpen kanpaina larri baten ondorio da. Gu gutxietsi, mespretxatu eta nolabait erasotzen saiatu dira. Baina, guk argi dugu nortzuk garen, eta zergatik osatzen dugun elkarte hau. Eta edonolako eraso eta mehatxuen gainetik, Etxeratek, guk, eta gure senide eta lagun errepresaliatuen eskubideen urraketa oro salatzen jarraituko dugu. Askotan ezezaguna zein isilarazia den sufrimenduaren bozgorailu izaten jarraituko dugu eta egiazko bake eta gatazkaren konponbidearen bidean lanean jarraituko dugu irmoki.

Zeren gure aurkako eraso hauek pairatzen genituen bitartean, gure eta gure senide eta lagunek eskubideak urratuak izaten jarraitu dute: sakabanaketak istripuak eragiten jarraitu du, senideak bisitetarako bidaietan jazarpen egoerak jasaten jarraitu dute, bisitetara sartzean egoera bortitzak bizitzen jarraitu dute, espetxeetan hainbat borrokaldi burutu dituzte euren eskubideen alde, beste euskal preso politiko bati 197/2006 doktrina aplikatu diote....

Eta eskubide urraketa hauek pairatzen jarraitzen dugun bitartean, eraso eta mehatxu guztien gainetik lanean jarraituko dugu. Sufrimendu honekin amaitu arte. Aurrean ditugun erronkei guztiok bat eginik aurre eginez.

**ETXEAN NAHI DITUGU!!**

# sakabanaketa

## 595 euskal preso politiko 80 espetxetan sakabanatuta daude

- 447 preso espainiar estatuko 45 espetxetan sakabanatuta
- 123 preso frantziar estatuko 28 espetxetan sakabanatuta
- 8 preso Euskal Herriko 3 espetxetan daude
- 3 preso Ingalaterrako espetxe batean
- Preso bat Sei Kondarrietako (Ipar Irlanda) espetxe batean
- Preso bat Portugalgo espetxe batean
- Preso bat Venezuelako espetxe batean
- 10 preso espetxeratze arinduan, pairatzen dituzten gaixotasunak direla eta
- Preso bat konfinatua Autunen (Frantzian)

- **93** euskal preso — Euskal Herritik **1000 eta 1.100** kilometrotara dauden espetxeetan
- **144** euskal preso — Euskal Herritik **800 eta 1.000** kilometrotara dauden espetxeetan
- **113** euskal preso — Euskal Herritik **600 eta 800** kilometrotara dauden espetxeetan
- **137** euskal preso — Euskal Herritik **400 eta 600** kilometrotara dauden espetxeetan
- **83** euskal preso — Euskal Herritik **400** kilometrotara dauden espetxeetan
- euskal preso **bat** — Euskal Herritik **900** kilometrotara **konfinatuak**
- **6** euskal preso — Euskal Herritik urrun dauden 4 herrialdetako espetxeetan

---

Hilabetekari hau amaitzerakoan jakin dugu, orain arte Autunen (Frantzian) konfinatua egon den Patxi Segurola atxilotua izan dela, Espainiara estraditatua izateko

# osasun eskubidea

Espetxean dauden preso gaixo larrien egoerari dagokionez, bada larritu gaituen zerbait. Izan ere, Ventura Tomé, gaixotasun larria duen presoaren egoeraren okertzearen berri izan dugu. Tafallarrari aurtengo urtarrilean prostatako minbizia diagnostikatu zioten, eta egun gaixotasun honen tratamendurako erradioterapia jasotzen ari da pasa den maiatzaren 22tik. Baina, jakin ahal izan dugu erradioterapia saio hauek esku burdinak jarrita eta oso baldintza txarretan jasotzen ari dela. Beti ere poliziak kontsulta barruan daudelarik, gainera. Era berean, espetxetik ospitalerako lekualdatzea zein baldintzatan egiten den salatu nahi dugu; izan ere, guardia zibilaren jarrera benetan salagarria da, izugarrizko tentsio uneak sortzen dituztelarik. Egoera hau onartezina eta jasanezina da, eta argi eta garbi erakusten du ez dela tratamendua baldintza egokietan jasotzen ari, eta ondorioz tratamendu honek ez duela izan beharko lukeen emaitza bermatzen. Beste edozein pertsonak bezala tratu egoki bat izateko eskubidea exijitu nahi dugu; ezarri zaion tratamendua baldintza egokietan jasotzeko eskubidea bermatu behar zaio, tratamenduak behar duen efektuak izateko.

15

Bestalde, argi dugu behar duen tratamendua jasotzeko ezinbestekoa dela Ventura Tomé euskal herriratzea. Honela, sakabanaketarekin eta urrunketarekin gertatzen ez den bezala, bere osasun egoera hobetzeko asistentzia eta babesa bermatzeko gutxieneko baldintzak egokiagoak lirateke.

Baina, espetxean dauden gaixo larriez gain, badira ihesean dauden eta larriki gaixo dauden euskal herritarrak ere. Eta ekainaren 15ean Euskal Iheslari Politikoen Kolektiboak Miarritzen egin zuen ekitaldi nagusian, egindako ekarpenean, hain zuzen ere, iheslari gaixoen inguruko eskaera bat egin zuten: Iheslari gaixo larrien zerrenda eta beren egoera konpontzeko bideak osatu. Hori dela eta, guk ere ezinbestekoa jotzen dugu ihesean dauden eta larriki gaixo dauden gure senide eta lagunen egoeraren berri izatea, horretarako zerrenda osatuz, eta honen aurrean hartu daitezkeen neurriak hartuz.

# salbuespen neurriak

## bizi osorako espetxe zigorra
## baldintzapeko askatasuna

Azpimarratzekoa da frantziar estatuan bizi osorako kondenek duten berezitasuna. Frantzian ez da urte kopuru maximorik, Europako beste estatuetan bezala. Biziarteko zigorrera ("perpétuité" deitzen duten neurria) kondenatua den preso batek baldintzapeko askatasuna eska dezake 15 urteren buruan (edo "segurtasun kondena" bete ondoan, kondenari neurri hau gehitzen bazaio), baina erabakia Kondenen Aplikapenen Epailearen esku da, eta honek etengabe uka dezake. Preso sozial batzuek kasik 50 urte pasa dituzte Frantziako kartzeletan.

71

Euskal preso politikoen artean, 4 neurri honen pean aurkitzen dira gaur egun : hilabete honetan 24garren urtean sartzen diren **Jakes Esnal, Frederik Haranburu eta Ion Kepa Parot**, eta berriki kondenatu duten **Mikel Karrera**. Beste hainbat euskal presori bizi arteko zigorra eman diete "de facto" oso kondena luzeekin edota kondena ezberdinak akumulatuz.

Espainiar estatuan **93 preso politikori zigorra luzatu diete**, ia 12 urteko luzapenak ere eman direlarik. Uztailean, Puerto II espetxean preso dagoen **Gabriel Urizar Murgoitio** arrasatearrari 197/2006 doktrina aplikatu zioten. Urizar 1985ean atxilotu zuten Saran, eta 1988an Espainiaratua izan bazen ere, 1986an hasi zen Espainiak ezarritako kondena betetzen. Irteera data 2014ko urtarrilerako bazuen ere, 197/2006 doktrina ezarri diote, eta 2016ko irailaren 17ra arte luzatu diote kondena.

Hau da, 93 euskal preso politikori bizi osorako espetxe zigorra ahalbidetzen duen 197/2006 doktrina ezarri diete, eta 93 hauetatik 71 presok espetxean jarraitzen dute. Iaz, Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiak 197/2006 doktrina aplikatua duen Ines del Rioren kasua dela eta, bere berehalako askatasuna eskatzen zuen sententzia eman zuen. Eta urtebe beranduago, epai honen urteurrenean, Europako Abokatuen Elkarteak (ELDH) 197/2006 doktrina aplikatua duten presoen berehalako askatasuna eskatu zuen mozio baten bitartez.

Euskal preso politikoei aplikatzen zaien beste salbuespeneko neurri bat da baldintzapeko askatasunaren ukatzea da. **144 euskal preso politikok baldintzapeko askatasunean aske egoteko epeak betetzen dituzten** arren, salbuespen neurri erantsien bidez bahituak dituzte eta preso jarraitzen dute bai estatu espainiarrean eta baita frantziarrean ere.

# espetxeetan

## eskubide urraketak

## bestelako gertakariak

### Isolamendua

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan espetxeetan **bakarturik dauden** preso politikoen zerrenda:

| | | |
|---|---|---|
| **Euskal Herria** | Zaballa | Txus Martin |
| | Martutene | Gotzone Lopez de Luzuriaga |
| **Frantziar estatua** | Tarascon | Alex Akarregi |
| | Bapaume | Kristina Goirizelaia |
| | Bourg-en-Bresse | Ander Mujika |
| **Portugal** | Monsanto | Andoni Zengotitabengoa |
| **Sei Konderriak** | Belfast | Fermin Vila |
| **Venezuela** | Caracas | Asier Guridi |

## Espetxeetako egoerak okerrera:

**FONCALENT (Alacant I) Espetxea:** Bizi baldintzek okerrera egin dute: isolamenduko moduluetan bisitak eta aktibitateak murriztu dizkiete.

**MURTZIA:** Euskal preso politikoei bisitak igandetan burutu beharko dituztela esaten duen oharra notifikatu diete.
Miaketak areagotu dizkiete.

**OCAÑA I:** Mikel Otegiri, orain arteko espetxeetan ez bezala, hemen ez diote pinturarako materiala sartzen uzten.

**PUERTO III:** espetxeko demandaderoa kendu diete, eta espetxeko janaria gutxitu diete.

**SEVILLA II:** Egoerak tentsio handikoa izaten jarraitzen du. Uztailaren 10ean, esate baterako, Koldo Aparicio espetxe honetara iritsi zen. Baina, ez zioten sarrerako deirik egiten utzi, eta agindu berezirik gabe miaketa integrala egin zioten.

Uztailaren 18tik 20ra ukimeneko miaketak direla eta arazo ugari izaten dituzte. Miaketa hauetan ipurdia, barrabilak eta zakila ere ukitzen dizkietelarik. Honen aurrean salaketak ipini zituzten.

Abuztuaren 18an, Asier Arzalluzek miaketa bat jasan zuen ziegan, eta barrabiletan eta zakilean ukimenak jasan zituen. Zerbitzu buruaren aurrean gertaera salatu zuen, baina, hurrengo egunetan ere miaketa bera jasan zuen.
Uda osoan zehar ostiraletan instantziak bidaltzen dituzte Euskal Herrira ekarri ditzatela, eta bitarte horretan 1.go graduko modulura eraman ditzatela eskatzeko. Izan ere, hainbat funtzionariorekin oso giro txarra dute espetxean, eta neurri bereziak aplikatzen dizkiete (miaketak, besteak beste). Zuzendariak neurri hauek isolamenduko neurri direla esanaz argudiatzen ditu, eta horregatik egiten dute isolamendutik 1.go gradura igarotzeko eskaera.

**VILLENA (Alacant II):** Maiatzaren 13an, Madrilen dilijentziengatik egon eta Villenara bueltan eraman zituzten Arkaitz Goikoetxea eta Juan Carlos Iglesias. Lekualdatzean zeramatzaten autobuseko ziega batean Guardia Zibil bat Arkaitz erasotzen saiatu zen, eta bidaiaren azken zatia autobuseko pasilloan joatera

behartu zuten. (Gertaera maiatzekoa bada ere, orain izan dugu gertaera honen berri).

**BOIS D'ARCY (Frantziar estatua):** Iurgi Garitagoitia zigor ziegan egon zen 15 egunez (uztailaren 19an atera zen), ospitaleko irteera batean, ihes egiten saiatzea egotzi diotela eta.

**FLEURY (Frantziar estatua):** Fleuryko modulu batean, zainketa berezia duten presoei segurtasun neurriak zorrozteko agindua dagoela adierazi diete: ziega aldaketak bi hilero (miaketa integral bortitzekin), ordenagailuak maizago aztertuko dizkiete... Hau salatzeko plantoak egiten hasi dira.

**FRESNES (Frantziar estatua:** Fresneseko euskal preso politiko guztiak borrokaldian egon dira. Batetik, maiatzaren 11n, Ekhiñe Eizagirre espetxeratu zutenetik bakarturik, beste kiderik gabe, zutela salatzeko. Bestetik, espetxeko baldintza orokorrean asko okertu zirelako. Besteak beste, ziegetako leihoetan burdinsareak jarri zizkietelarik. Guzti honegatik ekainaren erdialdean jada mitardera edo zigor ziegetara sartu ziren protesta moduan. Baina, Ekhiñek bakarturik jarraitzen zuen, eta mutilen baldintzak zertxobait aldatzea lortu bazuten ere, nesken baldintzak oso txarrak izaten jarraitzen zuten.

Ekainaren amaieran, Ekhiñe kideekin elkartuko zutela esan bazieten ere, ez zen horrela izan. Hori dela eta, jendarteari eskaera egin zioten Laurence Le Vert epaileari gutunak eta faxak bidaltzeko, eta gutun eta fax hauetan egiten zen eskaera Ekhiñe Eizagirre beste euskal preso politikoekin batzea zen. Baina, horrela ere egoera aldatu ez zenez, uztailaren 9tik, Fresnesen zeuden euskal preso politiko guztiak mitard edo zigor ziegetara sartu ziren, protesta moduan. Azkenean, Ekhiñe Fleury espetxera lekualdatu zuten, eta bertan kideekin elkartu zuten. Eta orain Fresnesen dauden euskal preso guztiak batera daude, neskak neskekin eta mutilak mutilekin.

**LONG LARTIN (Ingalaterra):** Espetxean bizi duten tentsio egoera areagotzen ari da: ziegetan miaketak izaten dituzte oso maiz, egunero biluzten dituzte, bizi-baldintzak gogortu egin dira...

**Tarascon** (Frantziar Estatua): **Ibai Sueskun** Frantziatik kanporatua izango zela salatzeko, **gose greba** bat burutu zuen irailaren 1etik 10era. Irailaren 10ean kanporatua izan zen. Barajasera eraman zuten eta han aske gelditu zen.

## Komunikazioa eta bisitak

**Aranjuez**: Oroitz Salegi Aranjuez espetxera eraman dute, bertan aurkitzen dira bere 11 hilabeteko semea eta bikotea. Guraso izan aurretik, bikotea Mansilla espetxean zegoen. Baina, haurra izan baino bi hilabete lehenago Lierni Armendariz Aranjuezera mugitu zuten, bertako amen moduluan egon zedin. Ordutik, bi presoak eta euren senideak hirurak elkartzeko saiakerak egin dituzte. Hamaika hilabete hauetan, elkartzeko borrokan ari ziren bitartean, Oroitzek bere semea bideokonferentzia bidez ikusi ahal izan zuen lehen aldiz. Eta aurrez aurre ezagutzeko aukera izan zuen, baina, horretarako senideek haurra Aranjuezetik atera eta Mansillaraino eraman behar izan zuten, bisita bat izan zezaten elkarrekin. Uztailean epaileak jada onartua zuten hirurak elkarrekin bisitak izateko duten eskubidea, eta abuztuan Oroitz Aranjuezera eraman zuten Liernirekin eta bere semearekin bisita izateko. Hala ere, zoritxarrez ez diote Aranjuez jarri destinu bezala, eta ondorioz Aranjuezera bisitak egitera bakarrik eramango dute; bere destinua Mansillan izaten jarraituko du.

Nerea Garaizar Aranjuezen espetxeratua dago, bere haurrarekin batera. Bada arazoak izaten ari da haurrarentzat jostailuak sartzeko eta baita aurrez-aurreko bisitetara ura eramateko ere.

**Castello II:** Kristaleko bisitak eta aurrez-aurreko bisitak ordu berean izaten dituztenez, ezin izaten dituzte kristaleko bisitak egin, eta galdu egiten dituzte.

**Cordoba:** Ekainaren 29an, Sergio Poloren alabari konbibentziazko aurrez aurreko bisita ukatu zioten jada espetxean, 10 urte baino gehiago izateagatik. Bisita hau jada espetxeak onartua zuen, eta hara heltzean ukatu ziotela esan zioten.

**Granada:** Tentsio handiko egoera bizi dute. Senideen miaketekin jarraitzen dute, bisitetara sartzerakoan. Arazoak izan dituzte konbibentziako aurrez aurreko bisitekin: bikoteei bakarrik ez dizkiete uzten bisita hauek egiten; hiru hilabetez behin bisita hauek 4 ordukoak dira, baina, azkenekoan adibidez funtzionario batek 3 ordukoa egingo zutela esan eta horrelaxe izan zen... Kristaleko bisitak eta aurrez-aurreko bisitak ordu erdiko tartea soilik izaten dute larunbatetan, eta ondorioz aurrez-aurrekoetara

joan nahi dutenek, bisitatik 10 minutu lehenago atera behar izaten dute, aurrez-aurrekora joateko, baina, 10 minutu horiek ez dizkiete itzultzen.

**Herrera**: Uztaileko bisita batean, Pablo Gorostiagaren senideak bera bisitatzeko zain zeudela, Guardia Zibila agertu zen txakurrekin. Senide guztiak, baita preso sozialenak ere, txakurren aurretik igarotzera behartu zituzten. Oso egoera bortitzak bizi izan ziren, batez ere adin txikikoekin.
Irailaren 14ean, aurrez-aurreko bisita batetara zihoan senide bati, arkua pasa ondoren, droga kontrola pasa behar zuela esan zioten. Bertan Guardia Zibila zegoen, zakurrekin. Zakur bat euskal preso politiko baten aurrean zegoen, preso sozial baten senidearen aurrean geratu zen, eta ostean euskal presoaren senidearen aurrean. Guardia Zibilak miaketa integrala egingo ziotela esan zioten, baina, berak ezer ez zuela argi zuela eta ukatu egin zen. Baina, Guardia Zibilak esan zion ukatzen bazen bisita geldituko zela, baina, hala ere, erradiografia bat egin behar ziotela, zakurra bere aurrean gelditu zelako. Eztabaida luze baten ostean, beste zakur bat ekarri zuten bere aurretik pasatzeko. Bigarren aldian zakurra ez zen bere aurrean gelditu, eta argi geratu zen ez zuela ezer. Beraz, azkenean bisita egin ahal zuen.

**Mansilla:** Irailaren 21ean, Mikel Korta presoarekin aurrez-aurreko bisita egitera joan ziren bere semea, arreba, koinatua eta iloba. Bisitara sartu aurretik, lehen segurtasun kontrola pasa eta areto batetara eraman zituzten. Bertan Guardia Zibila zegoen drogaren aurkako kontrola egiteko. Guardia Zibil batek izenen zerrenda bat zuen, eta izendatutako horiek beste gela batetara joan beharko zutela esan zieten. Zerrenda horretan ez zuten Mikelen senideen izenik esan, baina, hala ere, semeari eta koinatuari beste gelara joateko agindu zieten. Ondorioz, ez ziren bisitara arrebarekin eta ilobarekin joan, eta Mikel Kortak hori ikustean izugarri urduritu zen. Azkenean, semea eta koinatua ere joan ziren bisitara, baina, miaketa bat jasan behar izan zuten eta ordu erdi beranduago iritsi ziren.

**Puerto III:** Manex Castroren bikotea eta alaba jaio berria, uztailaren lehen asteburuan, Puerto III espetxera bisita egitera joan ziren. Goizeko 9:35etarako sarrerara iritsi zen autoarekin, eta bertan NAN-a eman behar izan zuen. Ez zuten beste inor geldituta. Berari kotxea txokoratzeko esan zioten, eta 9:50etan polizia bat gerturatu zitzaion, kotxea erregistratu behar ziotela esanaz. Kotxea erregistratzen zioten bitartean galdera pertsonal

asko egin zizkioten. Azkenean, 10:05etan utzi zioten pasatzen, bisita 10:30ean zen, eta ordu bete lehenago NAN-a eman behar izaten dute.

**Puerto III eta Huelva:** Irantzu Gallastegi eta Xabier Garcia Gaztelu espetxe ezberdinetan daude banatuta. Kexa sartua dute, baina, elkarbizitzako bisitak egiteko arazoak dituzte. Gainera, bi haur dituzte, eta haur hauentzat egoera izugarri zaildu da. Asteburu batean gurasoekin bisita egin ahal izateko, bai Puerto III-ra eta baita Huelva-ra ere joan behar dutelako.

**Sevilla II:** Txus Goikoetxearen lagunak betiko moduan aurretik eskatua zuten bisitara joan zirenean, ordenagailuan ez omen zela agertzen eta ez zieten bisita egiten utzi. Bisitara joan ziren lagunek eta espetxe barruan Txusek protesta egin zuten, baina, ez zuten ezer lortu. Hala ere, Txus eta bere kide den Asier Arzalluz isolamendura eraman zituzten protesta egiteagatik. Bertan egon ziren bitartean, bi euskal presoek uko egin zioten espetxeko janariari.

Zoritxarrez ez zen lehen aldia izan, espetxe honetan internetez hartutako bisitekin arazoak izan zituztena.

**Topas:** Ekaitz Samaniego presoaren aitona, biloba bisitatzera joan zenean, Ekaitzen amak paper bat sinatu behar izan zuen, aitona lehen pisura igotzeaz bera arduratuko zela jarriz. Espetxea ez dago ezinduentzat egokitua, eta ondorioz beste bi preso sozialen laguntzaz indarrez igo behar izan zuen lehen pisura.

## EPPKren dinamika espetxeetan

**Azken ostiraletan** euskal preso politikoak dauden espetxe guztietan **Euskal Presoak Euskal Herrira** dinamika burutzen dute. Espetxe guztiek dinamika propioa dute. Espetxe gehienetan espetxearen janaria errefusatzen dute, nahiz eta, bestelako ekimenak ere burutzen dituzten: baraua, Euskal presoak Euskal Herrira.

**Azken aurreko ostiraletan** baraua burutzen dute euskal preso politiko guztiek **197/2006 doktrina** bertan behera geratzeko eskatuz.

# Ikasteko eskubidea




EHUko ikasturte akademikoaren inaugurazio ofizialean, hainbat senidek elkarretaratzea burutu zuten, preso dauden gure senide euskal preso politikoek EHUn ikasteko duten eskubidea aldarrikatzeko. Komunikabideei honako prentsa oharra helarazi zitzaien; baina, komunikabideetan inolako oihartzunik izan ez zuenez, hemen oharra osorik helaraztea erabaki dugu.

**IKASLE PRESOEK ESKUBIDEA DUTE EHUn IKASTEKO**

Euskal presoek Euskal Herriko ikastetxeetan ikasteko eskubidea daukate, baita EHUn ere. Eskubide guztien jabe izan daitezela!

EHUko ikasturtearen hasiera ofizialean, euskal preso politikoen hainbat senide, irakasle eta ikasle bildu gara gaur, Donostian, Carlos Santamaria Zentroko aurrealdean, EHUko eta Lakuako agintariei gure eskaera jakinarazteko: Euskal Herrian ikasi gura duten euskal presoak EHUn matrikulatu ahal izatea.
Hogeita hamar urte baino denbora luzeagoan, debekuz debeku eta oztopoz oztopo, euskal ikasle presoen ikasketak EHUri lotuta egon diren arren, gaur egun EHUtik kanpo egin behar dute eskaera hori ikasi nahi duten presoek, ezin

baitute oraindik Euskal Herriko unibertsitate publikoan ikasi.

2003 urtean izan ziren kaleratuak EHUtik, eta azken hamar urteotan EHUko eta EAEko agintariek ezer gutxi egin dute presoen ikasteko eskubidea bermatzeko. Euskal Herriko seme-alabak dira eta hemengo ikastetxeetan, euskaraz, ikasi nahi dute. Horregatik, euren gogoa eta eskubidea ekarri ditugu hona. Euren ahotsa izanik, euren aldarrikapena plazaratzeko.

Gaur, EHUko ikasturtearen hasiera ofiziala "ospatzera" etorri ei dira agintariak eta unibertsitateko hainbat ordezkari. Geu, aldiz, ez gara ezer "ospatzera" etorri. Izan ere, agintariei ez dutela euren hitza bete gogoraraztera etorri gara eta, aldi berean, emandako hitza bete dezatela eskatzera. Hitza hitz.

Urkullu jaunari, 2004an Lakuako Legebiltzarrak hartutako erabaki bi gogora ekarri nahi dizkiogu:

-lehena, ikasle presoen aldeko ez-legezko proposamena, EHUn eta euskaraz ikastea ahalbidetzen duena, eta,

-bigarrena, Unibertsitateko Legea, euskal herritarren ikasteko eskubidea jasotzen duena, edozein bereizkeriaren gainetik.

Noiz betearaziko du Lehendakariak Lakuako agintari politikoek eurek sorturiko legeriak agintzen duena? Eta noiz bideratuko dute gobernukideek legeak aurreikusten duen garatze-araudia?

Euskal presoek EHUn eta hemengo ikastetxeetan matrikulatuta egon behar dutela gogorarazten diegu, kalitateko hezkuntza doan jasoz, eta hori lortzeko zer egingo duen jendarteari azaltzea nahi dugu.

Goirizelaia jaunaren bigarren agintaldia da, 2013-14 ikasturtea hasi da, baina Espainiako espetxeetan dauden euskal presoek EHUn ikasi ezinik jarraitzen dute. Izan ere, presoei ikasteko eskubidea ukatzeaz gain, EHUri irakasteko eskubidea debekatu egiten diote Madrilgo agintariek.

Noiz arte zigortuko ditu euskal presoak EHUren ezintasunak? Noiz arte onartuko du EHUk bere funtzio nagusiaren debekua, hots, irakastearen debekua? Noiz lortuko du EHUk Madrilgo gobernuak exijitzen duen hitzarmena, ikasle presoak matrikulatu ahal izateko ? ezin dugu denbora gehiago galdu.

Euskal Herriko gehiengo sozialak ez du ulertzen honen guztiaren zergatia. Geuk ere ez dugu ulertzen Autonomia Erkidegoko Erakundeek agertu duten ezintasun nabarmena eraso bidegabe horri legeen zein politikaren esparruetatik erantzuteko. Azken urte hauetan guztietan, hedabideetan eta izandako batzarretan agertu duten aldeko diskurtsoak ez du praktikan eraginkortasunik izan.

Espainiar zein frantziar espetxe politikek argi utzi dute euskal preso politikoak era berezian zigortu nahi dituztela. Horregatik, sakabanaketa- eta bakartze-politikaren bidez, presoen giza duintasuna ezabatzea dute helburu. Ikastea gaitasunak garatzeko bide bat da, kulturari eta munduari zabaldutako leihatila bat, etorkizunean heziketa hobea izateko aukera bat... Hori guztia ez dator bat Madrilen eta Parisen martxan jarri duten suntsitze-sistematikoaren espetxe politikarekin.

Gure eskaerak, aldiz, politika ezgizatiar hori gainditzeko xedea du, hots, hezkuntza eskubidearen urraketa gainditu nahi dugu eta presoei ikasteko aukera bermatu. Bide horretan, EHUk, Hezkuntza Sailak eta Gasteizko Gobernuak bide politikoak eta akademikoak zabaldu behar dituzte. Horretarako, zera eskatzen dugu:

- Espainiako espetxeetan dauden euskal presoek Euskal Herriko ikastetxeetan, EHU barne, ikasteko hitzarmena sinatzea (zelan eta noiz Madrilgo agintariekin adostu ondoren)

- gaurko bazterkeria eta disfuntzioak gaindituz, Frantziako eta Portugaleko espetxeetan dauden euskal ikasle presoei EHUn ikasteko baldintza egokiak eskaintzea, kalitateko hezkuntza eta doakotasuna bermatuz.

Gaurko EHUko hasierako hitzaldian, besteak beste, “duintasunak berreskuratzeko” deia entzungo dute gonbidatuek. Ea diskurtsoaren asmo horrek guztiontzako bidezkoa den egoera batera garamatzan. Ez dezagun aukera hau ere galdu.

Ikasketa Batzordea
Etxerat

# senide eta lagunak

## Sakabanaketak eragindako istripua

Aranjuezeko espetxean preso den **Asier Aginakoren** ama eta lehengusinak auto istripua izan zuten, irailaren 2an, aurrez-aurreko bisitara bidean. Ezbeharra, goizeko 10:00-etan Madrileko Guadalix de la Sierra udalerriaren parean gertatu zen; errepidearen estugune batean ibilgailu batek atzetik jo eta bidetik atera zituen. Senide biak ospitalera zuzendu ostean eta zegozkien probak egin eta gero, jasotako kolpeak eragindako lesio zerbikal eta lunbarra diagnostikatu zieten. Aurrez-aurreko bisita gabe geratu ziren eta kotxeak kalte handiak izan zituen.

## Jazarpena

Senideok jasan behar dugun jazarpenaren adibide garbi bat izan zen, abuztuaren 24an **Badajozeko espetxean** den Alberto Marinen amak, funtzionario baten partetik jasandako tratua.

Aipatu egunean, arratsaldeko lehen orduetan, Alberto Marinen gurasoak kartzelara bertaratu ziren aurrez-aurreko bisita burutzeko asmoz. Hasieratik atzeman zuten presoaren gurasoek, egun hartako tratua ohikoa baino oldarkorragoa eta tentsio handiagokoa zela. Arku detektagailua igarotzerakoan, oinetakoak kentzean, oinak estaltzeko plastikozko zorroa ematera ukatu zen funtzionarioa, ondorioz, zoru zikinetik oinutsik ibiltzera behartua izan zen. Jarraian, bikotea, miaketa egiteko, gela ezberdinetan banatu zuten. Aitak jasandako miaketa ohiko haztapenen bitartez egin zuten bitartean, preso politikoaren amak funtzionarioaren eskutik jasan behar izan zuenak eraso zantzuak izan zituen. Hasteko, min egiteko moduko indarrezko tiratze baten bidez, emakumeak idunean zeraman jaietako zapia kendu zion. Jarraian, burua miatzeko asmoz, eskuak adatsean sartu zizkion, atzamarrak indarrez estutu eta amorruz ileetatik tiratzeko gero. Funtzionarioak, emakumeak zeraman kamiseta igotzeko eskatu zion segidan, egitean, bularretako kopa bietatik beheraka tiratu zuen, bi bularrak agerian utziz. Gona igotzeko ere agindu zion, kuleroetatik eutsi eta atzerantz gogor tiratuz.

Alberto Marinen gurasoek salaketa jarri zuten kartzelan bertan, hala ere, erasotzaile izan zen funtzionarioaren identifikazio zenbakia emateari uko egin zion kartzelak. Maria Emma Etxebarriak, euskal preso politikoaren amak, bi salaketa jarri ditu intimitatearen kontrako erasoagatik, Badajoz eta Bilboko Guardia Epaitegietan. Alberto Marinek ere, kexa aurkeztu du Espetxeetako Idazkaritza Nagusiaren aurrean.

**Villena**: Irailaren 14an, Elena Beloki bisitatzera joan ziren gertukoek hotel batean ostatu hatu zuten, hurrengo egunean Elenarekin bisita egiteko Villena espetxean. Lo zeudela, goizaldeko 1:00etan, 3 polizia (2 uniformatu gabe eta uniformatu bat) ate joka hasi ziren. Identifikatzeko eskatu zieten, eta 20 minutuz gelako atean izan zituzten galderak eginez. Azkenean, karnetak itzuli zizkieten dena ondo zegoela esanez.

# Deportatuak



## Kristiane Etxaluzen testigantza

**Alfonso Etxegarai Ekuadorrera deportatu zuten 1985eko uztailean. Sei hilabete geroago, 1986ko urtarrilean polizia espainiarrak, ekuatortarraren laguntzaz, bahitua eta torturatua izan zen. Bahiketaren ostean, bera eta beste deportatu bat ospitaleratuak izan ziren. 1986Ko abuztuan Sao Tomé-ra deportatua izan zen, eta egun bertan jarraitzen du. Kristiane Etxaluz, bere bikoteak, deportazioari eta bere ondorioei buruz hitz egin digu, idatziz bildutako testigantza honetan:**

Urtearen erdia São Tomé-n igarotzen dut, hangoentzat bizimodu «normal» bat emanez; eta beste erdia Zuberoako herri batean igarotzen dut, Domintxiarrentzat bizitza «anormal» bat emanez, izan ere, jakin badakite hemen nagoenean ere nire bihotza São Tomé-n baitago. 6000 kilometro baino gehiagotara. Agian, horregatik erotuko zen nire bihotza, edo hori ondorioztatu dut nik behintzat, hemengo kardiologoak eman zizkidan azalpenen ostean.

Zuoi, euskal preso politikoen senideo, antzeko zerbait gertatuko zaizue. Zuen gorputza hemen egon arren, ziur gorputza espetxeren batean, edo zuloren batean duzuela, beraien bizitzarako oso garrantzitsuak zareten eta zuok ikaragarri maite duzuon pertsonarekin. Nahiz eta, deportazioa ez den espetxeratzea bezala sortua izan, bada lotzen gaituen zerbiat. Izan ere,e giten dugun inbertsio familiarra, fisikoa, afektiboa, espirituala eta ekonomikoa gure aukerek uzten diguten adinakoa da. Guaza bera da, urtean bitan 6500 kimoletro egitea, berarekin egoteko, edo hilean behin 1000 kilometro egitea berarekin ordu erdiz egon ahal izateko. Beno, edo agian ez: deportatuaren bikotea izatea errentagarriagoa da, zeren gure kasuan behintzat ez dizkigute gure laztanak neurtzen...

Gure herriaren historia luzean, ez da euskaldunok indarrez beste herrialde batetara eraman gaituzten lehen aldia. XVIII. mendearen amaieran, Sara, Ainhoa eta Lapurdi eta Nafarroa arteko mugan dauden herrietako biztanleak, eta Errepublika Frantsesaren aurka zeudenak, Landes-etara eraman zituzten. Ezer ez zegoen leku batetara. Asko malariagatik hil ziren, biziraundako batzuk leinuak osatzera iritsi ziren, beraien jatorria deuseztuz, errudun sentituz, zigor finena beraien gain emanez : beraien identitatea erabateko klandestinitatean eman beharra.

Agian, Mitterand-i, Frantziako Errepublikako presidenteari, zeinak udak bere emaztearen etxean Landes-etan igarotzen zituen, metodo interesgarria iruditu zitzaion, nazioarteko komuni-




tatearen aurrean indar gehiegikeria erabiliko ez balu bezala erakusteko. Ziur ideia 1982ko gabonetan sortu zela. Orduan, Felipe Gonzalez, bere lagun gazte eta espainiarra, predidenteak udak igarotzen zituen etxera joan zen, euskal gatazka behin-betiko amaitzeko asmoz. Frankismoaren garaian, Frantziak ez zion besterik gabe laguntzen Espainiari. Era berean, Frantziako zenbait juristak eta gizarteko zenbait sektorek uste zuten Frantziak giza eskubideen aldeko herrialde gorena izaten jarraitu beharko lukela, eta beraz, errefuxiatu politikoei estatus hori ematea onartzen zen. Eta hortaz baliatu ziren ETA sortu zenetik etorritako lehen errefuxiatu uholde hura. Nazioarteko dokumentuak zituzten, baina, aldi berean beraien herrian kokatzen ziren, Euskal Herrian, nahiz eta Frantzian izan. Hau onartezina zen Espainiako autoritateentzat, baina, ez zituzten frantziarrak konbentzitu Gonzalez-Mitterand bikotea sortu zen arte. Bi abokatu sozio-demokratak, bai beraien herrialdeari eta baita nazioarteari ere, lekzioak emateko gai zirenak. Esukal Nazioaren askatasunerako mugimenduaren aurkako plana antolatu zuten, zeinetan Espainiak agintzen du, Frantziak gauzatu egiten du eta royalty-a jasotzen du.

Lehen fasea, 84ko urtarrila, Panamara 16 deportatu eraman zituzten. Baina, beraien zoritxarrerako hiriburuko apezpikua euskalduna zen, eta agian bere barnean baita abertzalea ere, eta honek deportatuei Panaman ACNUR-eko deletua aurkitzen lagundu zien. Delegatu honek errefuxiatu bezala emandako pasaporteei esker Kubara heldu ziren, baina, gonbidatu moduan ; ez deportatuak. Berriro diot: Kubak gonbidatu bezala hartu zituen ACNUR-en eskaera baten ondorioz, beraz, Kuba ez da deportazioko herrialde bat kontsideratu behar. Nabardura garrantzitsu bat da.

84. urtea Iparraldeko errefuxiatuentzat urte txarra izan zen: lehen estradizioa gauzatu zen ; ondorioz, 3 estraditatu eta Togora 4 kanporatze egon ziren (Frantziak Afrika erdialdean ustiatzen zituen lurrak). Hauek erabaki juridiko bategatik daude deportatuak. Atzera botatzeko beste deportatuen kasua baino errazagoa, izan ere, bestea erabaki administratibo bat izan zen, botere gehiegikeria bat, «antzinako erregimenaren» antzeko zerbait. Eta hemen ikusten da zein herrialdek edo erregimenek onartzen zuten bahituak izatea besteentzat: Cabo Verde, Venezuela, Republica Dominicana, Equador, Gabon, Argelia eta São Tomé. Bitarte horretan, Iparraldean edozein txokotan aurki zitzaketen GAL-ekoak. 58 errefuxiatu deportatuak izan ziren 84 eta 89 artean, baldintza hobeagoetan edo okerragoetan jasoak izan zirenak. 58 hauetatik 7 deportazioaren herrialdean hil ziren gaixotasun edo istripuengatik.

Nire bikote, Alfonso Etxegarairi, Ekuador egopkitu zitzaion. Aireko eta Mugetako Poliziak atxilotu zuen uztailaren 85erako, Quito-ra eraman zuten 85eko abuztuan, 15 egunez kartelean atxikia izan zuten eta ondoren txalet batean izan zuten, momentu oro, 2 poliziek zaintzen zu-



telarik. Urrian, Angel Aldana iritsi zen. 86Eko urtarrilean Espainiako poliziak bi pertsona torturatu zituen, garai hartan ETAk bahitua zuen Guzmanen inguruko informazioa eskuratu ahal izateko. 86Ko martxoan, Antxon Etxebeste iritsi zen, Santo Domingotik Quito-ra. 86Ko abuztuan, Alfonoso Etxegarai São Tomé-ra eraman zuten polizia ekuadortarrek, eta ordutik, bertan bizi da. 1992Tik lan finko bat du, etxe bat, auto bat, eta futbol salan jokatzen du igande goizetan, eta bakean uzten dute. «Mulato» deitzen diote, ezagun mordoa ditu, lagunen bat edo beste ere bai, eta bitartean denborak aurrera darrai, tunelaren amaiera argia bilatuz, desertuan uratu aurkitu nahiean. Badirudi aurkitu duela, Euskal Herriaren askatasunerako eskenatoki berri honen aurrean, «borroka legalarena» Euskal Herriak dagozkion eskubideen jabe izan dadin.

28 urte, hortaz, konfinaturik, etxetik oso urrun. Bere bizitzaren erdia, eta inongo momentutan ez du bere burua euskal erresistente bezala identifikatzeaz utzi.

Deportatu baten bikote bezala ematen ari naizen testigantza honetan bururatzen zaidan lehen gauza zoriontsu naizela aitortzea da, eta egunero abesten dudala bizitza honi eskerrak emateko, niri hainbeste eman izanagatik. Ez Amerika eta Afrikara bidaiatzeko aukera izan dudalako, zeren nik nahiago dut nire herrialdean bertan, eremu itxi eta txiki batean bidaiatu, itsasoa zeharkatu baino. Ez eta sufrimendua jasaten ikasteagatik ere, zeren txikitatik erakutsi didate mainak ez egiten eta nire penekin astuna ez izaten. Nahiz eta, hau herentzia genetiko eta kultural bat den. Eta dena aitortzen ari naizenez, aitortu behar dut deportazioak maitemintze pasional baten erdian harrapatu gintuela, eta biok ezbehar hauen aurrean arnasa hartzeko modu bat bezala bizi izan dugu gure maitasuna. Agian, «zorte» hau izan ez banuen, bizitzako eremu honetan ez nuen inolako zorterik izango. Argi dago, bestelako gauza batzuei uko egin behar izan diegula, agian, guztiok amesten ditugun gauzak: ondo ordaindutako lan egoki bat, etxe egokitu bat, ondo edu-

